AITONA GIZARAGAIXOA

Larogei pezetako sari bat eta bitezara Mondragoin Irabazitako moldaera

PEDRO MARIA OTAÑO'K

Udaberriko usai gozozko
illunabartxo batian,
Donostiyatik urruti gabe
uri ontako partian,
baserritikan onontz datorren
bidetxigor politian,
sagar ta gastañ, arriz, elorri,
urritz ta lore tartian;
azpialdian errekatxua
marmariyaz ostopian;
eguzkiaren azken dizdizak
aruntzko mendi tentian;
kuku ta beste txorien kantak
baso gustiak betian;
kabi batian lau txorikume
txillar tarteko otian,
Gauz abei denai begiratuaz
emen, gure lur maitian,
"Iñon ez dago onelakorik"
esanaz nere artian
netorren, eta alako batez
jiratxo bat ematian,
aitonatxo bat arkitu nuben
eserleku arlotian,
berekin zeukan penaren kargak
lurrera iya botian
garau ta leku pozgarri artan
Gizon ura ikustian,
alaitasunez inguratua
aiñ egoera tristian,
bereganatu nintzayon zerbait
itzegiteko ustian

-

Iruditzen zait gaur oraindikan
bera ikusten naguela,
arri tontortxo gañian
eserita daguela;
belaun nekatu bien tartean
urritz makil bat dubela,
beraren puntan ipiñirik ñen
buruan zuben txapela,
bi eskuakin gogor elduaz,
kontu egiñaz onela,
eta kokotza oyen gañean
lotan balego bezela,
Nola jostatzen pill pill zebillen
egoaizetxo epela,
buruko ille txuri bakanak
egara zijoazela

esan zeikian, uste det berak
sentitutzen etzubela,
Antxen nenguan, bere onduan,
ser egiñ ez nekiyela,
laguntzarik nai zuben galdetu,
edo aldegin bestela;
itzegiñ zuben, eta kezkatik
atera nintzan berela.

-----

Asnas lodi bat irten zitzayon
petxu estutik jasua,
ta lenbiziko au esan zuben;
- ¡¡Nere Euskara gaxua¡¡

- Esan onetan ezaguturik,
aitonak zedukan miña,
erantzun nion. - Jauna, Euskara
ez dago aiñ aldegiña,
oraindik ere lur maite ontan
bada zeñek itzegiña....
-Bañan nere itz motxak etziran
bera lasaitzeko diña,
ta zion; - Ondo ikusitzen det
datorkigun erasua;
ez da biziko, laxter ilko da
gure Euskara gaxua.
Jauna ez bedi orla tristutu,
ez dago Euskara juna,
¿ Ez du sentitzen inguru ontan
daguen alaitasuna;
ez du ikusten ez dala gaitza,
baizik dena osasuna;
Euskal-erriko txorion kantak
ez dago pozez entzuna?
- Bai, len bezela sayatzen dira
kukua eta xoxua;
oyek or daude, bañan galduta
gure Euskara gaxua

-------

Jauna, barkatu bizait, berriro
gogor egiten badiyot;
Euskara oraiñ baño txarrago
egon dala deriskiyot;
ez du ikusten nola izkuntza
ontan ari geran biyok ?
Gaur Donostiyan ez dakiyenik
ez du aitortu nai iñork

Bañan erderak dauzka
erriya eta basua:
alperrik zabitz,galdua dago
Gure Euskara gaxua.

Jauna, alaitzen asi gintezke
Euskara maite degunak:
badatoz, ustez iya betiko
galdutzat zeuden egunak
len aintzakotzat artzen etzuten
damatxo txapela-duanak,
gaur erantzuten dute biotzez:
--"gu gerade euskaldunak"
--"Bañan ainbestek jartzen diote
traba edo arazua........
¿ Nola nai dezu indartutzia
gure Euskara gaxua ¡

Jauna, badaki, nola lenago
ez genekiyen erderik,
eta guraso leyal on askok
umiak argitu nairik,
aldi bateau ¿ non ikusi da
izkuntz au gabeko mairik
Orrengatikan dago Euskara
lotzaz txokuan gorderik.
--Bukatu bedí oitura orren
epaya edo plazua:
izan zazute maitexiago
gure Euskara gaxua.

Jauna, ez beza negarrik egin
esan diotan bezela,
ikusitzen du lenago baño
askoz obeto gaudela;
luza lezake, zergatik zailduan
oso indartzen berela.......
-- Ontan malkuak kolpaz kendurik
erantzun ziran onela:
--Nik erderarik ez dakit
nere illobak.... ¡ au sua ¡
ni bezelaxe burlatzen dute
gure Euskara gaxua.

Au mintzatzian arkitu zuben
nonbait aiñ estu barrena,
non altxarikan ezerlekutik
alzezaken azkarrena,
esan ziran :--Ai ¡ Denak nai dute
lege zarrak dakarrena,
eta ez dute ezagututzen
izkuntza dala aurrena
"Miru gaiztoak menderatutzen
"duten bezela usua,
"etzazutela illtzera uzti
"gure Euskara gaxua.

Eskuarekin agur egiñaz
arturik makillatxua.
etxe aldera abiatu zan
aiñ euskaldun doatsua:
geldi-geldika jarraitu nion
neurtuak bere pausua,
illobetera biurtu zedin
aitona gizagaixua.